# AURKIBIDEA

# NOR GARA?

2023ko urrian, palestinar erresistentziak iniziatiba hartu ondoren, eta ofentsiba sionistaren areagotzearen aurrean, hainbat eragilek Palestinaren aldeko elkartasuna bideratzeko batzea erabaki genuen. Izan ere, ordura arte Euskal Herrian Palestinaren alde egondako kontsentsu zabala hausteko arriskua ikusi genuen, zenbait sektoretatik diskurtso ekidistanteak mahaigaineratu baitziren, palestinarren erresistentzia eta zapalkuntza israeldarra parekatzen zituztenak. Herri zapalduon erresistentzia kriminalizatzen duten diskurtsoen aurrean erantzun irmoa emateko beharra ikusi genuen, palestinar herriaren erresistentziarako eskubidea aldarrikatuz. Horrela jaio zen Palestinarekin Elkartasuna plataforma.

Hauek dira gure printzipioak:

- **PALESTINAR AUZIAREN ULERKERA.** Palestinar herria herri kolonizatu bat da. Israel Estatu kolonizatzaile bat da eta bere sostengua den ideologia sionista supremazismoan oinarrituta dago. XX. mende hasieran mendebaldeko potentziek proiektu sionista bultzatu zuten, Palestinaren kolonizazioa eta Israelgo Estatuaren sorrera ahalbidetuz. Honekin Asia Mendebaldean aliatu fidel bat izatea bilatzen zuten, haien interes geoestrategikoak bermatzeko funtzioa bete zezan (interes ekonomiko zein militarrak). Kolonizazio horrek garbiketa etnikoa gauzatu du 1948ko lurraldeetan eta prozesu horretan dihardu Gazan eta Zisjordanian. Gainera, 1948ko lurretan, Gazan eta Zisjordanian bizi diren arabiarren eskubideak murrizten ditu *apartheid* erregimena aplikatuz. Horretaz gain, milioika palestinar erbesteratzera behartu ditu hamarkadetan zehar, eta errefuxiatu hauek euren lurraldera

itzultzeko eskubidea izan beharko lukete. Kolonizazio eta garbiketa etniko hau, hasi zenetik gaur egunera arte, Mendebaldeko herrialdeen babes eta finantziazioarekin egiten du Israelek.

- **ERRESISTENTZIARAKO ESKUBIDEA.** Kolonizazioaren, apartheidaren eta garbiketa etnikoaren aurrean, palestinar herriaren erresistentziarako eskubidea babesten dugu, beharrezko dituen bitarteko guztiak erabilita. Ezin ditugu kolonizatuaren biolentzia eta kolonizatzailearena parekatu, Mendebaldeko komunikabide, alderdi eta gobernuek egiten duten bezala.

- **IRTENBIDE POLITIKOA.** Palestinaren askatasuna deskolonizazio-prozesu baten emaitza izango da. Izan ere, Israelen oinarrian dagoen sionismoa supremazista eta etnizista da, eta ez du palestinarrekin elkarbizitzarik ahalbidetzen. Arazoa, hortaz, ez da presidente baten ala bestearen izaera, ezta gizarte israeldarraren faxistizazioa ere: proiektu sionista bera baizik. Hortaz, palestinar herriaren askatasunerako berme bakarra Israelgo entitate sionistaren desagerpena da: Israel desegitea, alegia.

- **EGINKIZUNAK.** Palestinar herriarekiko elkartasuna adierazteaz gain, Euskal Herriko eta, oro har, Mendebaldeko herrialdeetako langileriaren eginkizuna boikota bultzatzea eta Israelen konplize diren gobernu, alderdi eta enpresen konplizitatea seinalatu eta borrokatzea da, konplizitate-harreman horiek baitira kolonizazio sionista eta bere sarraskiak posible egiten dutenak.

# ISRAEL DESEGITERA BIDEAN, HARREMAN ORO ETEN!

Euskal Herriko agintari, enpresari eta bestelako eragileek Israelekin dituzten harremanak agerian utzi eta horien aurkako borrokak abiatzeko asmoz, azaroaren 29an *Israel desegitera bidean, harreman oro eten! izeneko kanpaina abiatu genuen.*

Data horrek pisu sinbolikoa du. Izan ere, halako egunez 1947an, Nazio Batuen Erakundeak Palestinako lurrak zatitzeko Partizio Plana adostu zuen. Horren bidez, Nazioarteko Komunitate deritzonak Israelgo Estatuaren sorrerari bide eman zion, sionistei lur palestinarrak oparituz, eta gehiengoa ziren palestinarrei lurren gutxiengoa esleituz, jarraikortasun geografikorik gabe. Erabaki horrek ahalbidetu zuen palestinarren *Nakba*, garbiketa etnikoa. Mendebaldeko herrialde inperialisten babesik gabe, beraz, Israelen sorrera ez zen posible izango.

Israelen sorrerari bide emateaz gain, Amerikako Estatu Batuek eta Europako potentziek entitate sionista hedatzea eta indartzea bultzatu dute. Azken urteko erasoaldi bortitza ere Mendebaldearen babes honek ahalbidetu du. Izan ere, Mendebaldeko potentzien interes geopolitiko eta komertzialak bermatzeko sortu zuten Israel, horretarako baliatzen dute gaur egun ere, eta era guztietara sostengatzen dute. Hortaz, argi

esan daiteke: *Israel hemen hasten da*, Mendebaldeko herrialde kapitalista eta inperialistetan.

Hori dela-eta, ibilbide laburra du konponbidea gobernari eta nazioarteko instituzioen esku utzi eta haiei exigentziak egiteak. Nazioarteko instituzio politiko eta judizialak Israel finantzatzen duten estatu berdinen kontrolpean daude: Mendebaldeko potentzien menpe, eta haien interesei erantzuten diete. Hortaz, genozidioaren amaiera ez da etorriko Israel indartzea bilatzen duten estatuengandik, ezta estatuz gaindiko instituzioen eskutik ere. Alferrikakoak dira haiei zuzendutako eskaerak. Espainiar eta Frantziar Estatuak, noski, ez dira salbuespena, ezta euskal instituzioak ere.

Nazioarteko instituzioak ez badira irtenbidearen parte eta, esan dugun bezala, Israel *hemen ere hasten* bada, entitate sionista desegiteko baldintzak hemen, Euskal Herrian, jarri behar ditugu. Estatu sionista bizirik mantentzen laguntzen duten harremanak seinalatu eta borrokatu behar ditugu, harreman guztiak eteteko presioa biderkatuz. Izan ere, asko dira gure inguruan Israelekin salerosketan ibiltzen diren enpresak, genozidioari esker aberastu eta Israelen finantziazioa bermatzen dutenak; asko dira bere industria militarra zuzenean edo zeharka hornitzen duten enpresak; bere irudia indartzen duten kirol eta kultur ekitaldiak; eta baita Israelgo Estatuarekin harreman komertzial eta diplomatikoak mantentzen dituzten gobernu, diputazio eta alderdiak.

# TXOSTENAREN ASMOAK ETA MUGAK

Txosten honen asmoa Euskal Herritik Israelgo Estatua era askotan babesten eta legitimatzen dela ikustaraztea da, gure inguruan Palestinaren zapalkuntzaren konplize ugari baitaude. Israelen konplizeez aritzean, enpresa multinazionalengan jarri ohi da fokua, horiek era nabarian indartzen baitute entitate sionista. Baina gurean ere baditugu Israelekin harremanak dituzten enpresa eta instituzioak, Estatu genozida honen existentziaz probetxu ateratzen dutenak. Horiengan azpimarra jartzea da txostenaren helburu nagusia, babes horiek eteteko presioa egin behar dugula uste baitugu.

Hortaz, hurrengo lerroetan ez da ageri nazioarteko konpainien edo erakundeen inguruko informaziorik; baina horrek ez du esan nahi ez ditugunik jopuntuan jarri behar. Horien aurkako borrokak jada martxan dira, adibidez, Eurovision lehiaketaren aurkakoak1 edota Carrefour merkataritza katearen aurkakoak2. Horien edota bestelako enpresen inguruko informazio gehiago nahi izanez gero, BDZ (Boikota, Desinbertsioa eta Zigorrak) kanpainaren webgune eta sare sozialetan topatu daiteke[3].

---

[1] RESCOP (2024). Boicot Israel en Eurovisión. Escríbele a RTVE.

[2] Ecuador Etxea (2024). Denuncian la complicidad de Carrefour en el genocidio palestino por sus acuerdos con Israel.

[3] BDZ eta nazioarteko BDS.

Txosten honen asmoa, beraz, Euskal Herriko eta Israelgo enpresa eta instituzioen arteko harremanen nondik norakoak, eraginak eta dimentsio erreala ezagutzera ematea da. Hala ere, eskura dauden datuen bilketa bat besterik ez da, eta Euskal Herriko agenteek Israelekin dituzten harremanak hemen jasotzen direnak baino zabalagoak dira. Txostenaren azken atalean harreman eta konplize guztien aurkako borrokaren inguruko zehaztapen politiko batzuk egin ditugu.

# EUSKAL HERRIKO ETA ISRAELGO AGENTEEN ARTEKO HARREMANAK

Harremanak lau kategoriatan sailkatu ditugu, hainbat ezaugarriren arabera: harreman komertzialak, militarrak, instituzional edo diplomatikoak eta kulturalak. Hala ere, kasu askotan ikusiko den bezala, harreman mota batzuek kategoria ugaritako ezaugarriak dituzte. Adibidez, Ertzaintzak Mossadekin eta segurtasun-industria israeldarrarekin duen harremana diplomatikoa, militarra eta komertziala da aldi berean.

# Harreman komertzialak

## Zer dira?

Euskal Herriko enpresariek eta enpresek Israelgoekin dituzten salerosketa-harreman eta kontratuak dira. Instituzio publikoek eta bankuek ere harreman komertzialak dituzte Israelekin, edo Israelekin harremana duten Euskal Herriko enpresekin

## Zein ondorio dituzte?

Aldebiko ondorio kaltegarriak dituzte.

- Esportazioen bidez Israelgo ekonomia eta Estatua hornitzen dute (kotxeak, autobusak, trenak, era ezberdinetako material industriala…). Inportazioen bidez, Israelgo enpresen eta Estatuaren finantziazioa indartzen dute. **Ondorioz, Israelgo ekonomia eta estatua indartzen laguntzen dute Euskal Herriko enpresariek.**

- Inportazioen bidez Euskal Herriko industria hornitzen du Israelek (petrolio findua, kimika organikoa, kimika inorganikoa, makineria elektrikoa, nekazaritzarako ongarriak…) eta esportazio eta kolaborazio-kontratuen bitartez Euskal Herriko enpresariak aberastu egiten dira. **Ondorioz, euskal burgesia Israelgo enpresei eta estatuari lotua dago, eta bere aberastasuna handitzeko, ezinbestekoa zaio Israelgo Estatuaren indartzea** (eta beraz, *apartheida*, garbiketa etnikoa eta genozidioaren konplize dira).

## Datu batzuk

- Espainiako Ekonomia, Merkataritza eta Enpresa Ministerioaren arabera[4], 2023an, Hego Euskal Herrian, 683 enpresek Israele-

[4] DataComex (2025). Estadisticas del comercio exterior.

ra esportazioak egin zituzten (espainiar Estatuko kopuruaren ia %14), 294 milioi euroko balioarekin.

- Urte berean, 401 enpresek inportazioak egin zituzten Israeletik, 20 milioi euroko balioan.
- 2022an EAEko enpresek 200 milioi euroko salmenta-kontratuak egin zituzten Israelekin, eta 2023an 264 milioira igo zen kopuru hori. 2023ko uztailean EAEko enpresen esportazioak jasotzen dituzten lehen 20 herrialdeen artean kokatu zen Israel[5], Australiaren (26 milioi biztanle) eta Kanadaren (40 milioi biztanle) aurretik.

## Adibide esanguratsu batzuk

- CAF eta Saphir engineering enpresa israeldarraren arteko lankidetza: Jerusalemgo tranbia[6] eta Tel Aviveko tranbia[7] egiteko kontratuak dauzkate (osotara 2.800 miloi eurotan baloratuak) eta Haiffa eta Nazaret lotuko dituen tranbia egiteko 1.200 milioi euroko kontratu batengatik lehian aritu ziren[8][9].
- Mondragon Taldeak Israelgo enpresekin bost kolaborazio kontratu ditu[10], Ikerlan, Lortek, Danobat, Erreka eta Ideko enpresen bitartez. Haietako bik kolaborazio kontratua dute Israel Aerospace

[5] Legasa A. (2023ko urriaren 14a). Israel aumenta un 52% las compras a empresas vascas en lo que va de 2023. Crónica Vasca.

[6] CAF (2019). El consorcio formado por el Grupo CAF y la constructora Saphir se adjudica el proyecto del tranvía de Jerusalen.

[7] Mariscal, M. (2022ko urtarrilaren 22a). CAF se adjudica un contrato de 525 millones en Tel Aviv. *Noticias de Gipuzkoa.*

[8] Consenso del Mercado (2023). CAF puja por la construcción de la línea de tranvía entre las ciudades de Haifa y Nazaret, en Israel.

[9] Mariscal, M. (2023ko irailaren 27a). La catalana Comsa gana el concurso del tranvía de Jerusalén al que optaba CAF. *Noticias de Gipuzkoa.*

[10] Zelaieta, A. (2024ko ekainaren 6). Grupo Mondragon participa en dos proyectos del sector aeroespacial con el mayor fabricante de defensa israelí. *El Salto.*

Industries (IAI) taldearekin. Azken hau Israelgo enpresa aeronautikorik handiena da, eta armada israeldarrarekin lotura estua du.

- Fagor enpresak Elco enpresa israeldarrarekin aliantza egin zuen, Moulinex enpresa frantsesaren zati bat bereganatzeko[11].

- Irizar autobus enpresak (2008 arte Mondragon Taldekoa) Israelera autobusak esportatzen ditu 1980ko hamarkadatik. 2019an Mobileye enpresa israeldarrarekin elkartu zen autobus automatikoak sortzeko softwarea garatzeko[12], eta, berriki, 40 autobus saldu dizkio Israeli. Irizarrek autobusen sektoreko Israelgo merkatu-kuotaren % 50 inguru kontrolatzen du[13].

- Instituzio publikoek ere Israelgo ekonomia indartzen dute, zuzenean edo zeharka:

  - Europar Batasuna eta Israelen arteko Merkataritza Akordioak Estatu sionistari EBko kideen abantaila berdinak eskaintzen dizkio[14].
  - Espainiako Industria Ministerioaren SEPI (Estatuko Industria Partaidetzarako Sozietatea) funts publikoak Airbus armagintza enpresan % 4ko parte-hartzea du eta Indra enpresan % 28koa[15]. Azken hau Israel Aerospace Industriesen bazkide estrategikoa da.
  - Eusko Jaurlaritzaren "Finkatuz" funtsak CAFen % 3 bereganatu du.

---

[11] Cinco Días. (2001eko azaroaren 24a). Fagor se alía con la israelí Elco para pujar por el grupo francés Brandt. *Cinco días.*

[12] Del Moral, J.A. (2019ko azaroaren 13a). Irizar se alía a Intel para mandar al paro a todos los chóferes de autobús. *Gananzia.*

[13] Irizar (2023). El Irizar i6S Efficient Integral llega a Israel.

[14] Official Journal of the European Union, L 147/3, 2000ko ekainaren 21. (2000). Euro-Mediteranean agreement, L 147/3, 1-154.

[15] Drake, C. (2025eko urtarrilaren 14a). Sepi refuerza el control de su capital en Indra y Telefónica. *Expansión.*

— Bizkaiko diputazioak SOSA programa martxan jarri zuen, Bizkaiko *start-up*ak Israelgo enpresekin harremanetan jartzeko helburuz[16].

[16] Bizkaia Beaz (2023). Nueva convocatoria SOSA-Bizkaia dirigida específicamente a scale-ups.

# Harreman militarrak

## Zer dira?

Armagintzaren eta segurtasun-teknologien arloko era askotariko harremanak dira, Euskal Herriko enpresariek eta instituzioek Israelgo enpresekin dituztenak. Oro har, herrialde kolonizatzaile bat, Israel, indartzen duten harreman guztiek indartzen dute kolonizazioa, baina harreman militarrek honen gaitasun militarrak modu zuzenean indartzen dituzte.

## Zein ondorio dituzte?

Aldebiko ondorioak daude:

- Esportazioen bidez, Israel armaz eta gerra materialez hornitzen da. Euskal enpresariak salmentaz aberasten dira, gerrarekin negozioa eginez.

- Inportazioen bidez, Israelen armagintza eta segurtasun-teknologien sektorea indartzen da, eta militarizazio eta okupazio militar sionistaren kostuak merkatzen dira. Arma eta teknologia hauek produzitzea oso garestia da; hortaz, behar duena baino gehiago ekoizten du Israelek, soberakina esportatuz prozesua merkatzeko (Israelek ekoiztutako armen % 70 esportatu egiten du)[17]. Palestinarren aurka frogaturiko abangoardiazko material belikoa da Israelek esportatzen duena: “gudan frogatua” ziurtagiria duten armak. Hala, espainiar, frantziar eta euskal poliziak eta armada hornitzen dira, bertako biztanleak zelatatu eta erreprimitzeko.

---

[17] Pozo A. (2024). *¿Quien arma a Israel? El embargo por imperativo moral y legal. Icaria.*

## Datu batzuk

Armagintzaren ekoizpen-katearen konplexutasunaren ondorioz eta, ziurrenik, enpresarien irudiarentzat kaltegarria delako, zaila da ikertzea Euskal Herrian (edo beste edozein tokitan) Israelera doazen armak ekoizten ote diren. Horrek, ordea, ez du esan nahi Euskal Herrian ez denik Israelgo armadak erabiltzen duen materiala ekoizten, edo ez direnik Israelgo armagintza enpresa nagusiak indartzen.

Euskal Herrian armagintzan parte hartzen duten 200 enpresa inguru daude: aeronautikan, ikerketan, armagintza enpresak hornitzen... Askok publikoki aitortzen ez badute ere, Israel Aerospace Industriesekin (IAI) harreman zuzena dute (Israelgo armadarekin lotura estua duen bertako enpresa aeronautikorik handiena).

## Adibide esanguratsu batzuk

- M Torres enpresa nafarra. Webgunean esaten duenez[18], hegazkin militarrak ekoizteko 7 programatan parte hartzen du: A400M, C17, Eurofighter Thypoon, F18A, KC390, KFX, Lockheed Martin F35. Bertan aitortzen du Israel Aerospace Industries (IAI) bere bezeroa dela.
- M Torres berak, Araban bi lantegi dituen Aciturri enpresak, Mondragon Taldeko Ikerlan, Lortek eta Danobat enpresek eta Aernnovak kolaborazio zuzena dute Israel Aerospace Industriesekin (IAI)[19] [20] [21]

---

[18] MTorres. (2025). Referencias militares.

[19] Appluslaboratories (2023).Proyecto HERWINGT.

[20] Project Hera (2025). The team.

[21] Lortek (2025). FLASH-COMP - Flawless and sustainable production of composite parts through a human centred digital approach.

- Dassault aviation enpresa. Angelun lantegi bat dauka 1971tik[22]. Munduko 23. "defentsa" enpresarik handiena da. Israel bere bezeroetako bat da 1954tik, eta bere hegazkinak gerrarako erabili izan ditu. Gainera, harreman zuzena du Israel Aerospace Industries (IAI), Elbit Systems eta Rafael armagintza enpresa israeldarrekin inteligentzia funtzioetarako programetan, besteak beste[23].

- Lauak. Hazparneko aeronautika enpresa horrek enpresa israeldar batekin kontratu zuzena dauka, hegazkin baten piezak egiteko.[24] 2009an sinatu zuen kontratua 15 urterako, eta aurten berritu egin du. Tartean Israel Aerospace Industries (IAI) ere badago.

- BBVA. Espainiar Estatuan Israelgo armada hornitzen duten enpresetan gehien inbertitu duen entitatea da: azken urteotan 1.482 milioi euro inbertitu ditu horrelako armagintza enpresetan[25]. Boeing-ek 933,4 milioi dolar jaso ditu, eta honakoak ekoizten ditu: lur eta aire bidezko AGM-11 Hellfire misilak; AH-64 erasorako helikopteroak; F-15 Eagle II kazak; GBU-31, 32 eta 38 gidaturiko bonbak; eta GBU-39 diametro txikidun bonbak. General Dynamics enpresak 345,9 milioi dolar jaso ditu eta M795 jaurtigaiak ekoizten ditu. Italiako Leonardo enpresak 298,7 milioi jaso ditu, eta Oto Melara itsasontzietarako kanoiak ekoizten ditu, eta F-35.14 konbaterako hegazkinen ekoizpenean ere parte hartzen du.

- Kutxabankek, Laborak Kutxak eta Rural Kutxak Indra bezalako enpresak finantzatu dituzte[26]. Enpresa hau Israel Aerospace In-

---

[22] Dassault Aviation (2025). Biarritz.

[23] Stop Arming Israel France (2024). Guide des entreprises françaises d'armement complices d'Israël.

[24] Groupe Lauak (2009). Un beau contrat pour le Groupe LAUAK en Israël.

[25] Carbonell, M, et al. (2024). La Banca Armada y su corresponsabilidad en el genocidio en Gaza: La financiación de las empresas que fabrican las armas usadas en las masacres contra la población palestina. *Centre Delàs.*

[26] Pastor A. (2018 azaroaren 15a). ¿Invierte tu banco en armas?. *El Salto.*

dustries (IAI) enpresaren bazkide estrategikoa da, drone teknologian aritzen da eta okupazioarekin izugarri aberastu da[27].

- 2023ko urritik Espainiako Estatuak gutxienez 12 kontratu esleitu dizkie armagintza edo segurtasun arloko enpresa israeldarrei, tartean Elbit Systems, Guardian Defense & Homeland Security eta Rafael Advanced Defense System[28].
- Eusko Jaurlaritzak, udaletxeek, Ertzaintzak eta Foruzaingoak enpresa israeldarrekin hainbat kontratu egin dituzte: entrenamenduak[29], porta-granadak[30], mugikorrak zelatatzeko teknologiak...[31] Osotara, ia bi milioi euroko kontratuak izan dira.

---

[27] Centre Delàs (2024) La campaña #DesarmandoIndra denunciamos en la Junta General de Accionistas de Indra sus vínculos con empresas que se benefician de la ocupación israelí y el genocidio en Gaza.

[28] Fin al comercio de Armas con Israel (2024). Contratos públicos españoles a empresas de seguridad y defensa israelíes o sus filiales en España desde octubre de 2023.

[29] Barcenilla Roman, L. (2021eko irailaren 11). Gobierno Vasco, Ertzaintza y Ayuntamiento de Bilbao contratan a la empresa de un exagente de la inteligencia israelí. *El Salto.*

[30] Barcenilla Roman, L. (2021eko abenduaren 15a). El Gobierno Vasco compra portagranadas a la empresa del exagente del Mossad israelí y refuerza la seguridad público-privada. *El Salto.*

[31] Zelaieta, A. (2022ko urriaren 3a). Cellebrite, el software de vigilancia israelí de la Ertzaintza para acceder a teléfonos móviles. *El Salto.*

# Harreman instituzionalak eta diplomatikoak

## Zer dira?

Instituzio publikoek, alderdiek, sindikatuek, unibertsitateek eta mota askotako agenteek Israelgo enpresekin, Estatuarekin edo bestelako instituzioekin dituzten harremanak dira. Adibiderik adierazgarrienak presidente, ministro edo enbaxadoreen artekoak dira. Batzuetan, instituzioen arteko harreman horiek komertzialak eta militarrak ere badira, unibertsitateen kasuan bezala, esate baterako.

## Zein ondorio dituzte?

Israelgo Estatua normalizatzen dute eta bere irudia garbitzen dute.

## Adibide batzuk

Espainiar eta Frantziar estatuetako presidente diren Sanchezek eta Macronek Israelgo Estatuari keinu diplomatiko indartsuak egin dizkiote, eta baita Iñigo Urkulluk ere, lehendakari zenean.

- Hiruek haizatu dute herrialde kolonizatzailearen defentsarako eskubidearen falazia.
- Macronek Netanyahuri babesa adieraztearen eta Nazioarteko Zigor Auzitegiaren sinesgarritasuna mantentzearen artean, lehenaren alde egin du, Netanyahu Frantziar estatura joango balitz lehen ministro israeldarra atxilotuko ez lukeela argituz[32].

---

[32] Berhokoirigoin, J. (2024ko azaroaren 28a). Frantziak "immunitatea" aitortu dio Netanyahuri, Libanoko su-etenaren truk. *Argia*.

- Sanchezek Palestina estatu gisa aitortu zuen egunean, argi utzi zuen Israel “herrialde laguna” izatea nahi zuela, harekin ahalik eta harreman onenak mantenduz[33].

- Bi estatuek, Israelgo interesekin lerratuta, errepresioa erabili dute Palestinaren aldeko mugimenduaren aurka .

  - Espainiar Estatuako kasu errepresiboak. Samidoun elkarteko bi kide terrorismoagatik epaituak izan dira Auzitegi Nazionalean[34], urriaren 6ko mobilizazioetan Santiago de Compostelan 9 atxilotu egon ziren[35], Indar Gorri taldeko kide bat atxilotua izan zen sare sozialetan jokalari sionista baten adierazpenak salatu eta sionismoaren aurkako adierazpenak egiteagatik[36], eta Madrilgo Unibertsitatean pistola atera zuen Mossadeko agente bati emandako babesa[37].
  - Frantziar Estatuko kasu errepresiboak. 2023ko urrian Palestinaren aldeko manifestazioak sistematikoki debekatu ziren[38] (Baionan[39], esaterako), hainbat aktibista terroris-

[33] Europa Press (2024ko maiatzaren 18a). Sánchez reivindica que reconocer a Palestina refleja el “rechazo a Hamás” e insiste en que Israel es país amigo.

[34] Samidoun (2024ko azaroaren 29a). La persecución a activistas propalestinas: un ataque contra la libertad de expresión y la solidaridad internacional.

[35] Diario Socialista (2025eko otsailaren 12a). Los 9 militantes propalestinos detenidos en Santiago llaman a movilizarse.

[36] Gedar (2024ko ekainaren 3a). Indar Gorriko kide bat atxilotu dute, sare sozialetan jokalari sionista bat seinalatzea leporatuta. *Gedar.*

[37] Águeda, P. (2024ko irailaren 22a). La Policía revela al juez la identidad del agente israelí que sacó una pistola durante una protesta en la Complutense. *ElDiario.es.*

[38] Lair, N. (2023ko urriaren 12a). La France interdit toute manifestation pro-palestinienne et interpellera tout «fauteur de troubles». *Radio France.*

[39] Gedar (2023ko urriaren 20a). Baionan, Palestinarekin elkartasunez deituriko mobilizazioa galarazi nahi izan zuen atzo Poliziak. *Gedar.*

moagatik kondenatuak izan dira[40] eta Palestine Vaincra elkartea legez kanpo utzi dute[41].

- Eusko Jaurlaritzak harremanak mantentzen ditu Israelgo Estatuarekin 1980. hamarkadatik. Harreman horiek indarra hartu zuten 1993-1994 urteetan, Euskal Herritik zenbait delegazio instituzional eta enpresarial Israelera joan baitziren industria, nekazaritza eta segurtasun arloetan harremanak estutzera[42].

- Bereziki estua da Ertzaintzaren eta Israelgo segurtasun-teknologiako enpresen arteko harremana, hamarkadetan zehar material ugari erosi baitie euskal poliziak. Adibide batzuk: Mikro-Link enpresari orratz baten tamainako mikrofonoak erosi zizkion, euskal poliziaren Komukinazio Sareaz Ceragon Networks eta ECI Telecom enpresak arduratu izan dira, Telefono-Monitorizazio Sistemaren mantenimendua Verint System enpresak egiten du[43], mugikorretako datuak erauzteko Cellebrite enpresak ekoitzia da[44] eta Nice enpresaren teknologia erabiltzen du ahotsaren grabaziorako.

- Euskal Herriko Unibertsitateak (EHU) bederatzi proiektu martxan ditu Israelgo unibertsitateekin eta erakunde publikoekin kolaborazioan[45]. Kolaborazio horietako bi 2024an bertan abiatu

---

[40] Le Monde (2024ko apirilaren 17a). Un responsable CGT condamné à un an de prison avec sursis, pour « apologie du terrorisme » après l'attaque du Hamas contre Israël. *Le Monde.*

[41] Diario Socialista (2025eko otsailaren 21a). El Estado francés confirma la disolución del colectivo Palestine Vaincra. *Diario Socialista.*

[42] Zelaieta, A. (2023ko urriaren 11). La relación entre el Gobierno Vasco e Israel: 40 años de entendimiento. *El Salto.*

[43] Zelaieta, A. (2022ko maiatzaren 21a). El gigante del espionaje israelí detrás del sistema de monitorización telefónica de la Ertzaintza. *El Salto.*

[44] Zelaieta, A. (2022ko otsailaren 3a). Cellebrite, el software de vigilancia israelí de la Ertzaintza para acceder a teléfonos móviles. El Salto.

[45] Zelaieta, A. (2024ko maiatzaren 31a). La UPV/EHU recibirá 4,2 millones por colaborar en nueve proyectos europeos con instituciones israelíes. *El Salto.*

zituen. Inplikatutako erakundeen artean Technion Research and Development Foundation dago, palestinarren etxeak eraisteko bulldozerren ekoizpenean parte hartzen duena. Osotara 4,2 milioi euro jasoko ditu EHUk proiektu horiei esker.

- OPUSen Nafarroako Unibertsitateak bere webgunean Tel Aviveko Unibertsitatearekin eta Jerusalemgo Unibertsitate Hebrearrarekin lankidetza duela adierazten du[46]. ENGAGE proiektuan parte hartzen dute biek[47]. Adierazgarria da kontinenteen araberako sailkapenean Israel Europako unibertsitateen artean kokatzen duela.

---

[46] Universidad de Navarra (2025). Nuestros convenios.

[47] De Fortuny eta Bohigas. ( 2024ko apirilaren 15a). Universidades españolas que participan con entidades israelíes en proyectos de I+D de la UE. La marea.

# Harreman kulturalak

## Zer dira?

Ekimen edo lehiaketa ezberdinetan Israelgo artista eta kirolarien parte hartzea ahalbidetzen edo errazten duten harremanak dira.

## Zein ondorio dituzte?

Harreman instituzional eta diplomatikoen antzera, hauen bidez ere Israelen normalizazioa bultzatzen da, bere irudia garbituz eta bere krimenak ezkutatuz. Harreman diplomatikoak baino sotilagoak eta zeharkakoagoak dira, eta zalantzan jartzeko zailagoak, kultura eta kirolaren izenean harreman "ez politiko" gisa aurkezten baitira.

## Datu batzuk

Israelek kirol eta kultura arloko ekimenak irudia garbitzeko erabiltzen ditu, horien bidez estatu sionistaren existentzia normalizatzen delako eta palestinar herriaren aurkako krimenak ezkutatzen dituelako. Gainera, kirolaren eta kulturaren bitartez egindako propagandak bestelako harremanak indartzeko balio du, Israel "estatu modernoa" bailitzan aurkezten delako eta entitate koloniala dela ezkutatzen delako.

- 2005ean Israelgo hiru ministeriok *hasbara* (propaganda) plana jarri zuten martxan, estatu kolonialaren irudia berrasmatu eta bere izaera koloniala ezkutatu nahian[48].
- Horrela aitortu zuen Isralego Kultura Ministerioko zuzendariordeak: "*Eleberrigile eta idazle ezagunak, antzerki konpainiak, eta erakusketak bidaliko ditugu (atzerrira). Horrela Israelen*

---

[48] Popper, N. (2005eko urriaren 14a). Israel aims to improve its public image. *Forward.*

*aurpegi jatorragoa erakutsiko dugu eta jendeak ez du gugan gerra testuinguruan soilik pentsatuko*[49]".

## Adibide batzuk

- Maccabi Tel Aviv saskibaloi taldeak Euroligan parte hartzen du eta urtero etortzen da Gasteizera Baskoniaren aurka jokatzera. Baskonia Euroligaren jabeetako bat da eta bere parte hartzea onartzen du. Israelgo Estatuaren kirol arloko erakusleiho nagusia da saskibaloi-talde hau. Azken urteotan, Maccabiko zuzendaritzak eta jokalariek okupazio-armada israeldarraren aldeko propaganda kanpainetan parte hartu izan dute: 2009an "Berun Urtua" operazioaren erdian (Gazako zerrendan 1.500 pertsona hil zituen erasoaldia) eta 2014an "Hegi Babesgarria" ofentsiban zehar (orduko hartan, armada sionistak 2.400 pertsona baino gehiago hil zituen). Palestinar herriaren genozidioa areagotu den honetan ere halakoetan parte hartzen jarraitzen dute[50].

- Israel Premier Tech txirrindularitza taldea Euskal Herriko kirol lehiaketetan presente izan da (Euskal Herriko Itzulian, Donostiako Klasikoan, Espainiako Vueltako etapetan eta Miguel Indurain Sari Nagusian). Talde honek harreman estua du sionismoarekin. Haien webguneko hebreerazko bertsioan honela dio: "*Taldeak Israel ederraren enbaxadoretzat du bere burua, eta Israel helmuga turistiko gisa sustatzen du lasterketak ikusten dituzten ehunka milioika pertsonen aurrean*[51]". Gainera, taldeko jabea den Sylvan Adamsek esan zuenez, "*kirolariek*

[49] Bronner, E. (2009ko martxoaren 18an). After Gaza, Israel grapples with crisis of isolation. *The New York Times.*

[50] Maccabi CO (2024ko martxoaren 15a). Purim amarillo-azul con los fans para la comunidad.

[51] Israel Premier Tech (2025). רוכבים, חדשות, סיפורים.

*badakite Israelgo talde batean daudela eta herrialde horren enbaxadoreak direla*".[52]

- Donostiako Zinemaldiak Israelgo gobernuak hautatu eta finantzatutako filmak proiektatu izan ditu, 2015ean adibidez[53].
- Horretaz gain, kultura-ekitaldi eta areto batzuek abeslari, poetak eta bestelako artista sionistak gonbidatu izan dituzte.
  - Horien artean esanguratsuenetako bat Noa da. 2009an Donostian, 2014an Gasteizen eta 2024an Bilbon egon da. Noak Israelen proiektu koloniala publikoki defendatu izan du, honelako adierazpenak eginez: "*nahi dudan gauza bakarra da Israelek denon onurarako den lana burutu dezan, eta askatu ditzala minbizi horretatik, birus horretatik, munstro fanatistatik, gaur egun Hamas izena duena*"[54].
  - Mayumana dantza talde israeldarra ere Euskal Herriko oholtzetan egon da: 2006an eta 2010ean Bilbon, 2009an eta 2021ean Iruñean.

---

[52] Velo. Israel Cycling Academy: Cycling's most intriguing and controversial team. *Velo.*

[53] Arbelaitz Mitxelena, L. (2015eko irailaren 22an). Zinemaldian "Israel marka" sustatzen dela salatzeko kontzentrazioa asteartean. *Argia.*

[54] Demagun (2009ko otsailaren 13a). Carta abierta de NOA (Achinoam Nini) a los palestinos. *Demagun.*

# ETA HONEN AURREAN ZER?

Txosten honetan bildutako informazioak argi uzten du Euskal Herritik entitate sionistarekin mantentzen diren harremanak ugariak eta orotarikoak direla eta, hortaz, ez direla salbuespenezkoak. Proiektu kolonialarekiko konplizitatea zabala da Euskal Herrian: *Israel hemen ere hasten da.*

Gure zereginei eta irtenbide politikoari heltzerakoan, bidea ez da Israelekin harremanak mantentzen dituzten instituzioetatik pasatzen. Izan ere, Israelekin harremanak mantentzen dituzte proiektu sionistaren existentziatik onurak ateratzen dituztelako. Iitxuraz Palestinaren aldeko keinuak eta bake deialdi abstraktuak egiten badituzte ere, agente horiek ez dira inoiz egiazko irtenbide politiko baten alde lerratuko. Genozidioa etetea eskatzen duten horiexek dira genozidioa ahalbidetzen dutenak.

Su-etena galdegiten duen komunitate internazionalak proiektu sionistaren alde esku hartu du beti, Palestinaren kolonizazioa hasi zenetik: Nazioen Ligak 1917ko Balfourren deklarazioa onartu zuen, eta 1948an Nazio Batuen Erakundeak Palestinarako Partizio Plana onartu zuen, palestinar herriaren garbiketa etnikoari atea zabalduz eta Israelen sorrera legitimatuz. Nahiz eta hainbatetan Palestinaren kolonizazioaren aurkako erresoluzioak onartu dituzten, hauek ez dute inolako efektu errealik eduki. Entitate sionistari babes diplomatikoa eman diote beti, potentzia kolonialari zilegitasun eta inpunitate osoa emanez.

Horren aurrean, gure eginkizun politikoa Euskal Herritik Israelen sostengua suposatzen duten enpresa, instituzio, alderdi politiko eta ekimen kulturalei aurre egitea da, entitate sionistari hornikuntza eta finantziazio iturriak moztu eta bere irudi garbiketa borrokatzeko helburuarekin.

Mendebaldeko enpresari eta politikariek erabat babesten dute proiektu sionista. Genozidioaren babesle diren instituzioetatik konponbiderik etorriko ez dela jakitun, Palestinarekiko elkartasun estrategia efektibo bat gorpuzteko elkartasuna langileon perspektibatik antolatu behar dugu.

Antolakuntza internazionalista indartzea dagokigu, konplizitate-harremanak seinalatuz, hauek etetearen aldeko ekimenak aurrera eramanez eta boikota bultzatuz. Palestinar herriaren kontrako sarraskia ahalbidetzen dutenen kontra borrokatzea baita hemendik egin dezakegun ekarpenik garrantzitsuena. Lan handia dugu aurretik; hortaz, Palestinan bizitzen ari den egoera historikoaren garrantziaz kontziente, ekin diezaiogun borrokari!